# URTEAN ZEHARREKO XXVI. DOMEKA

## A urtean

## I. IRAKURGAIA

*Gaiztoak, egin dauan gaiztakeriatik aldentzen bada, bizirik iraungo dau.*

Ezekielen Profezia liburutik

*Ez* 18, 25-28

Honan dino Jainko Jaunak: «Zuek dinozue: "Ez da bidezkoa Jaunaren jokabidea". Entzun, bada, israeldarrok: Nire jokabidea bidezkoa ez dala? Ez ete da zuena bidezkoa ez dana?

Zintzoa, bere zuzentasunetik aldendu, txarkeria egin eta hiltzen bada, egin dauan txarkeriagaitik hiltzen da. Eta gaiztoak, egin dauan gaiztakeriatik aldendu eta zuzenbidez eta justiziaz jokatzen badau, bizirik iraungo dau. Egindako txarkeriez ohartu eta hareetatik aldentzen bada, biziko da, bai, eta ez da hilko».

Jaunak esana.

Erantzun salmoa

*Sal* 25 [24], 4-5. 6-7. 8-9 (R/. ik. 6a)

R/. **Gogoratu zaitez zeure errukiaz, Jauna.**

V/. Azaldu niri, Jauna, zeure bideak,
erakutsi zeure bidezidorrak.
Gidatu nagizu zeure leialtasunean, eta irakatsi,
Zeu zara-eta nire Jainko salbatzailea,
Zeugan itxaroten dot eten barik. R/.

V/. Izan gogoan, Jauna, zeure errukia eta maitasuna,
betidanikoak dira-eta.
Ez gogoratu, ostera, nire gaztaroko pekatuez,
ez nire erruez;
gogoratu nitaz zeure maitasunean,
zeure ontasunari dagokionez, Jauna. R/.

V/. Ona eta zuzena da Jauna,
bidea erakusten deutse pekatariei.
Apalak zuzenbidez daroaz,
bere bidea erakusten deutse apalei. R/.

## II. IRAKURGAIA

Irakurgai hau era laburrean ik. honen ondoren.

*Izan egizuez zeuengan*
*Kristo Jesusi dagokiozan asmoak.*

San Paulo Apostoluak Filipoarrei egindako epistolatik

*Flp* 2, 1-11

Senideok: Egia bada Kristok adore emoten deutsuela eta maitasunak kementsu egiten zaituela, egia bada

Espirituagan bat eginik bizi zariela eta bihozbera eta errukitsu zariela, bete nagizue pozez, danok eretxi eta sentiera bereko izanez, alkar maitatuz eta ondo hartuz. Ez egin ezer norgehiagokeriaz edota harrokeriaz, apaltasunez baino, besteak norbera baino hobeak dirala pentsatuz; ez norberaren onari bakarrik begiratuz, besteena be bilatuz baino. Izan egizuez zeuengan Kristo Jesusi dagokiozan asmoak:

Harek, Jainkoaren izaera bereko izanik, ez eutson gogor eutsi Jainkozko bere mailari;
bestetara baino, egokion aintza itzi
eta esklabo-izaera hartu eban, gizakien antzeko eginez.
Eta gizaki lez agertuz, apaldu egin eban bere burua,
menpeko eginez heriotzaraino, kurutzean hiltzeraino.

Horregaitik, danen gainetik goratu eban Jainkoak
eta izen guztietan bikainena emon eutson,

Jesusen izenaren omenez danen belaunak makurtu daitezan,
zeruan, lurrean eta lurpean,
eta mihin guztiek autortu dagien Jesu Kristo dala Jauna,
Jainko Aitaren aintzarako.

Jaunak esana.

---

II. irakurgaia era laburrean.

*Izan egizuez zeuengan*
*Kristo Jesusi dagokiozan asmoak.*

San Paulo Apostoluak Filipoarrei egindako epistolatik

*Flp* 2, 1-5

Senideok: Egia bada Kristok adore emoten deutsuela eta maitasunak kementsu egiten zaituela, egia bada Espirituagan bat eginik bizi zariela eta bihozbera eta errukitsu zariela, bete nagizue pozez, danok eretxi eta sentiera bereko izanez, alkar maitatuz eta ondo hartuz. Ez egin ezer norgehiagokeriaz edota harrokeriaz, apaltasunez baino, besteak norbera baino hobeak dirala pentsatuz; ez norberaren onari bakarrik begiratuz, besteena be bilatuz baino. Izan egizuez zeuengan Kristo Jesusi dagokiozan

asmoak.
Jaunak esana.

---

## Aleluia

*Jn* 10, 27

R/. **Aleluia.**
V/. Nire ardiek entzuten dabe nire ahotsa, dino Jaunak;
Nik ezagutzen ditut,
eta hareek jarraitu egiten deuste. R/.

## EBANJELIOA

*Damutu eta joan egin zan. Zergalariak eta emagalduak zuek baino lehenago sartuko dira Jainkoaren erreinuan.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 21, 28-32

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen abadeburu eta herriko zaharrei: «Zuek zer deritxozue? Gizon batek seme bi zituan, eta batarengana joan eta esan eutson: “Seme, zoaz gaur mahastira, lanera”. Harek erantzun: “Ez dot gura”. Baina gero damutu eta joan egin zan. Besteagana be joan eta gauza bera esan eutson. Eta harek erantzun: “Banoa, jauna”; baina ez zan joan. Bietatik

zeinek egin eban aitaren nahia?» «Lehenengoak», erantzun eutsoen.

Orduan, Jesusek esan eutsen: «Egiaz dinotsuet: Zergalariak eta emagalduak zuek baino lehenago sartuko dira Jainkoaren erreinuan. Izan be, etorri jatzuen Joan Bateatzailea Jainkoaren nahiari dagokion jokabidea iragarriz, eta ez zeuntsoen sinistu; zergalariek eta emagalduek, barriz, sinistu egin eutsoen. Zuek, ostera, ikusi eta gero be, ez zinien bihozbarritu, hari sinisteko».

Jaunak esana.

# URTEAN ZEHARREKO XXVI. DOMEKA

## B urtean

### I. Irakurgaia

*Nigaitik bekaizti?*
*Nahiago neuke herri osoa profeta balitz.*

Zenbakiak liburutik

*Zen* 11, 25-29

Egun hareetan, Jauna lainoan jatsi eta Moisesegaz berba egin eban; gero, Moisesek eban espiritutik hartu eta hirurogeita hamar herri-arduradunei isuri eutsen. Espiritua hareengan

kokatu orduko, profeta lez hasi ziran berbetan; baina ez eben jarraitu. Gizaseme bi, bata Eldad eta bestea Medad eritxenak, hirurogeta hamarren taldekoak izan arren, ez ziran alkarketa-txabolara joan, kanpalekuan gelditu ziran. Baina kokatu zan espiritua hareengan be eta profeta lez berbetan hasi ziran.

Orduan, mutiko batek Moisesengana arineketan joan eta esan eutson: «Eldadek eta Medadek profeta lez berbetan dihardue kanpalekuan». Nunen seme Josuek, gaztetatik Moisesen laguntzaile zanak, esan eban: «Moises, ene jauna, galarazo egiezu». Baina Moisesek erantzun eutson: «Nigaitik bekaizti? Nahiago neuke herri osoa profeta balitz eta Jaunak bere espiritua danei emongo baleutse!»

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 19 [18], 8 eta 10. 12-13. 14 (R/. 9a)

R/. **Jaunaren arauak zuzenak dira, bihotzaren pozgarri.**

V/. Jaunaren legea bikain, barrua arnasbarritzen dau;

Jaunaren agindua fidagarri, heldubakoa zuhur egiten dau.
Jaunaganako begirunea garbi, iraunkor betiko,
Jaunaren erabagiak egiazko, dan-danak bidezko. R/.

V/. Zure morroi honek hareetan dau argia,
hareek gordetzean sari handia.
Nork ezagutu bere hutsegiteak?
Garbitu nagizu ezkutuko erruetatik. R/.

V/. Gorde nagizu guztiz harrokeriatik,
ez dakidala nagusitu;
holan, akats barik izango naz, pekatu larritik libre. R/.

## II. Irakurgaia

*Zuen ondasunak ustelduta dagoz.*

Santiago Apostoluaren epistolatik

*St* 5, 1-6

Entzun orain, zuek, aberatsok! Egizue negar eta aiene, gainera datorkizuezan zoritxarrakaitik. Ustelak jota dagoz zuen aberastasunak, eta sitsak janda zuen jantziak. Ugerrak jota dagoz zuen urre-zidarrak, eta uger hori izango dozue testigu zeuen kontra, eta suak lez jango dau zuen haragia. Auzi aurreko azkenak diran egun honeetan pilatu

dozue aberastasuna.

Zuen soloetan uzta batu eben langileei ordaindu ez zeuntsien soldatak deadarka dihardu, eta igitarien deadarra Jaun ahalguztidunaren belarrietara heldu da. Majo bizi izan zarie zuek hemen lurrean eta atseginetara emonak; holan, abereak lez gizendu zarie hilketa-egunerako. Errubakoa kondenatu dozue eta hil, eta inork ezin izan deutsue aurre egin.

Jaunak esana.

## Aleluia

Ik. *Jn* 17, 17b. a

R/. **Aleluia.**
V/. Zure hitza da egia, Jauna;
sagaratu gagizuz egiaren bidez. R/.

## EBANJELIOA

*Gure aurka ez dagoana gure alde dago.*
*Zeure eskuak galbidean jartzen bazaitu, ebagi.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Markosen liburutik

*Mk* 9, 38-43. 45. 47-48

Aldi haretan, Joanek esan eutson Jesusi: «Maisu, gizon bat ikusi dogu zure izenean deabruak botatzen, eta galarazo egin gura izan deutsagu, ez da

gure taldekoa-eta».

Baina Jesusek erantzun: «Ez galarazo, ze, ez da inor, nire izenean mirari bat egin eta gero Nitaz txarto berba eginez jardungo dauanik. Ze, gure aurka ez dagoana gure alde dago».

Jesusek esan eutsen ikasleei: «Mesiasen jarraitzaile zarielako, baso bete ur bada be emoten deutsuena, benetan dinotsuet, ez da saririk barik geldituko.

Nigan sinisten daben txiki honeetakoren baten sinismena okerbidean jartzen dauanak, hoba leuke errotarria samatik lotu eta itsasora botako balebe.

Zure eskuak galbidean jartzen bazaitu, ebagi egizu; hoba dozu eskubakar betiko bizitzan sartu, esku biak dozuzala infernura, amatatu ezineko surtara, joan baino. Zure oinak galbidean jartzen bazaitu, ebagi; hoba dozu hankabakar betiko bizitzan sartu, oin biak dozuzala infernura jaurtia izan baino. Hoba dozu begibakar Jainkoaren erreinuan sartu, begi biak dozuzala infernura jaurtia izan baino; han ez da hiltzen barruko harra, ezta sua be

amatatzen.
Jaunak esana.

# URTEAN ZEHARREKO XXVI. DOMEKA
## C urtean

### I. IRAKURGAIA

*Hor amaituko dira horreen nasaikeriak.*

Amosen Profezia liburutik

*Am* 6, 1a. 4-7

Hau dino Jainko Jaun ahalguztidunak:
«Zoritxarrekoak Sionen nasai bizi diranak
eta Samariako mendiaz fidatzen diranak!
Marfilezko ohetan luze etzuten dira,
artaldeko bildotsak eta kortako zekorrak jaten dabez;
zitararen soinura kantuan egiten dabe,
doinu barriak asmatuz, David diralakoan;
ardaoa kopa handitan edaten dabe,
orio usaintsu bikainenaz igurzten dabe euren burua.
Eta ez deutse ardura Israel herriaren hondamendiak!
Horregaitik, atzerrira joango dira
erbesteratu guztien lerro-buruan,

eta hor amaituko dira horreen jan-edanak eta nasaikeriak».
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 146 [145], 6c-7. 8-9a. 9b-10 (R/. ik. 1b)

R/. **Goratu egizu Jauna, nire barrua.**
Edo: **Aleluia.**

V/. Betiko eusten deutso Jaunak bere leialtasunari.
Zapalduen eskubideak defendatzen ditu,
gose diranei ogia emoten.
Jaunak askatzen ditu presoak. R/.

V/. Jaunak zabaltzen ditu itsuen begiak,
Jaunak jasotzen konkortuak,
Jaunak maitatzen zintzoak,
Jaunak ditu etorkinak zaintzen. R/.

V/. Umezurtzei eta alargunei zutunik deutse eusten,
baina gaiztoen nagusitza iraultzen.
Jauna errege da betieran,
zure Jainkoa, Sion, errege gizaldien gizaldietan! R/.

## II. Irakurgaia

*Bete agindua Jauna agertuko dan egunera arte.*

San Paulo Apostoluak Timoteori egindako

lehenengo epistolatik

*1 Tm* 6, 11-16

Zu, Jainkoaren gizon hori, ahalegindu zaitez justizian, jainkozaletasunean, sinismenean, maitasunean, eroapenean eta otzantasunean. Ekin sinismenaren burruka jatorrari eta eskuratu betiko bizia, haretarako dei egin deutsue-eta Jainkoak eta fede-autormen bikaina egin dozulako, testigu askoren aurrean.

Gauza guztiak biziarazoten dituan Jainkoaren aurrean eta Pontzio Pilatoren auzitegian autormen bikaina egin eban Kristo Jesusen aurrean erregutzen deutsut: bete agindua akatsik barik eta zeresanik sortu barik, Jesu Kristo gure Jauna agertuko dan egunera arte, bere sasoian agertuarazoko dau-eta Jainkoak.

Ha da Nagusi bakarra eta zoriontsua,
erregeen Erregea eta jaunen Jauna;
bera bakarrik da hilezkorra,
eta lortu ezinezko argian bizi da;
ez dau inoiz gizakiak ikusi
eta ezin dau ikusi be.
Berari aintza eta agintea betiko. Amen.

Jaunak esana.

## Aleluia

*2 Ko* 8, 9

R/. **Aleluia.**

V/. Jesu Kristo, aberats izanik, behartsu egin zan,
bere behartsu izateaz zuek aberats egiteko. R/.

## EBANJELIOA

*Zuk zorion ugari izan zenduan bizitzan,*
*Lazarok, barriz, zorigatxak;*
*orain harek atsegina aurkitu dau, eta zuk oinazeak.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 16, 19-31

Aldi haretan, honan berba egin eutsen Jesusek fariseuei: «Bazan gizon aberats bat, purpuraz eta lino finez jantzi eta egunero jai ederrak egiten zituana. Lazaro izeneko eskekoa, ostera, aberatsaren etxe-aurrean etxunda egoten zan, zauriz josita; gogotsu jango eukean aberatsaren mahaitik jausten zana. Txakurrek eurek be etorri eta zauriak miazkatzen eutsoezan.

Horretan, hil zan eskekoa, eta aingeruek Abrahamen altzora eroan

eben. Hil zan aberatsa be, eta lurperatu eben. Hilen Egoitzan oinazetan egoala, begiak jaso eta Abraham ikusi eban urrutian eta Lazaro haren altzoan, eta deadarka esan eban: “Aita Abraham, erruki zakidaz! Bialdu egizu Lazaro atzamar ertza uretan busti eta niri mihina freskatzera, ze, oinaze gorritan nago sugar honeetan”.

Baina Abrahamek erantzun eutson: “Seme, gogoratu egizu zuk zeuk zorion ugari izan zenduala bizitzan, Lazarok, barriz, zorigatxak; horregaitik, orain harek atsegina aurkitu dau, eta zuk oinazeak. Gainera, gure eta zuen artean leza handia dago, eta nahita be ezin da inor hemendik zuengana igaro, ezta hortik gugana be”.

Aberatsak barriro: “Orduan, aita Abraham, bialdu egizu, mesedez, Lazaro gure aitaren etxera, bost anaia baditut-eta; jarri dagizala jakinaren gainean, eurak be oinaze-leku honetara etorri ez daitezan”. Abrahamek erantzun eutson: “Han ditue Moises eta profetak; entzun deieela”. Harek ostera be: “Ez, aita Abraham; hildakoren bat joango balitxake, bihotz-barrituko

litzatekez”.

Baina Abrahamek erantzun eutson: “Moisesi eta profetei entzuten ez badeutsie, ez dabe sinistuko ezta hildako bat biztuta be”».

Jaunak esana.